# Azpeiti-co distrito edo barrutiyan botuac dituzten

## Nere Anai Maitagarriyai.

*«Orra nun dan Urnieta»*-ren doñuban.

—1—

Azpeiti-co barrutiya
¡Oh lecu zoragarriya!
Euscaldun garbi garbiya.
Sartu citzaigun oraiñ bi urte
Trampan *Nosedar-queriya*
Setá chit lotsa-garriya
Fuero-en etsai aundiya
Gure deshonra-garriya.

—2—

Artzai moduban lau otso
Bici diranac eroso
Saldu nai gaituzte oso.
Turroya lasai jatiagatic
Beste zortzi bat trampaso
¡Carlistac cirala atzo...!
Ez ezagutu guraso
Baicic bototan eraso.

—3—

Oriyen asmo larriyac
Nun dic diran etorriyac
Daquizqui masoneriyac.
Negar eguiñaz oroitu-gaiten
Cer diyon Fuero garbiyac
Legue-zar maitagarriyac
Cantatzen ditu eguiyac:
*Ill-tzeco zabel zuriyac.* (1)

—4—

Gaur guizon *zabel zuriya*
Eta *traidore* aundiya
Omenda, *guztiz-arguiya.*
Perla oyequin abiyatu zan
Emen *Nosedar-queriya*
Saldutzen Euscal-erriya
Eta histori garbiya
Munduban arrigarriya.

—5—

Lengo mascara quenduta
Santutzat RAMON artuta
Dabiltza lotsac galduta.
Tesmoniyo guztiz paltsuac
Don Carlos-entzat sortutá
Mandamentubac aztutá
Juramentubac saldutá
Trimpiti trampan sartutá.

—6—

Darabizquiten pausoac
Diradela chit gaiztoac
Daqui !Provinci-gaŝoac.!
Milla berreun ezqueroz tandic
Erregue eguiyazcoac
Eta Fuero-zar cintzoac
Dirá anaya osoac
Elcarren lagun gozoac. (2)

—7—

Carlos-en juramentua
Daucagu bedeincatua
Biyotz barrenen sartua.
Jayo guiñaden defenditzeco
Jaungoico erruquitsua
Fuero-zar cintzo cintzua
Sort-erri gaŝo gaŝua
Eta Erregue gozua.

—8—

*Trampan-lur,* (3) *Por-diru-zabal* (4)
*Patrio* (5) *eta* NOSE-DAR (6)
*Pelipo-Fraŝcu* (7) ¡numbait an!
Legue santubac agoniyan-ta
Oyec turroya auqueran
Sarturic bostac gambelan
Ari dirade jan ta jan
Naiz gu soldadu eraman.

—9—

Maroto jayo ez bazan
*Nose-dar-tarric* gaur etzan
Orduban plaga-au sortuzan.
Oraiñ bi urte paltsoqueriyan
Tirso-ren contra cebiltzan
Ta... aurten orduco guisan
¡¡Beguira nola dabiltzan
Gure botuen arrantzan.!!

—10—

Ez gaiten izan ichubac.
Euscal-dun leyal prestubac
Eman Tirso-ri botuac.
*Erramun-chon-tzat* bazuaztenac
Cerate ardi galdubac
Edo.... zauzcate saldubac
Setá madaricatubac:
¡¡¡AY GURE LEGUE SANTUBAC!!!

*R. Arranz-illun.*

(1) Fuero-co liburuan 2-garren Capituloan 29-garren Tituloan.
(2) Letu-bitez Guipuzcoa-co Fueroac.
(3) Azcoiti-coa.
(4) Errez-ill-coa.
(5) Tolosa-coa.
(6) Eguiña-ren falsotzallea jaquiña-ren gañean.
(7) Amezqueta-coa.

**TOLOSA:—Imp. de E. López.**